# Pachi-ElosuK eta Izubelako Artzayak egiñdako tratubaren gaiñian

## Pastorrek jarrilako itz neurtubak

— 1 —

Abendubaren ogeita
Bederatzi garrenian
Arruara juan nintzan
Illun abarrian;
Gau ori an pasadet
Umore onian
Tratu bat ere egindet
Ala beafian.

— 2 —

Tratu ori nola zan
Esango det garbi
Nik lau txerri nituban
Bestiak sei ardi;
Ez giñiyon tatxarikan
An esan alkarri
Tratu orrek zer egiña
Gero du ekarri.

— 3 —

Lau txerri saldu ditut
Sei ardiren truka
Eziñ esan nezake
Zeiñenadan kulpa;
Beiñepein aurkitzen naiz
Zerbait miñ artuta
Bat errekara juan zan
Iru golatuta.

— 4 —

Gero otzaillaren
Ogeita bostian
Abiso juan zitzayon
Ez ala ustean;
Nai ez nuben okerrikan
Gizonen artian
Lan ori ixillagorik
Konpon zitekian.

— 5 —

Arruara juan eta
Galdez nintzan asi
Ya iñor zekiyan
Etxian zan Patxi;
Iraetan zala eta
Ara nintzan jatxi
An etziran koraje
Txarrik erakutzi.

— 6 —

Gizonaren moduban
An itzegin zuban
Konponduko gendubela
Lan ori Zestuan;
Ara juntatu giñan eta
Ez dakit zer zuban
Iñolaere gauza onik
Egiñ nai etzuban.

— 7 —

Ikusi nindubenian
Umill eta bigun
Gaitza zala pentzaturik
Gogor egin zigun;
Itz egiten perkax eta
Bekokiya illun
Ez bazeukan bezelaxe
Kulparikan iñun.

— 8 —

Gauza faltadubenak
Ibilltzia billa
Nik pentzatzen dedanez
Ez ta marabilla;
Jaun orren erteera
Etzan aiñ umilla
Nai nuban tokitikan
Atera nedilla.

— 9 —

Ori aditu arren
Ez nintzan billdurtzen
Befiro asi giñan
Gauzak kompondutzen;
Miseriya batera
Giñaden etortzen
Geruago ta okerrago
Despeidan gendosen.

— 10 —

Partiera egiñdegu
Onela Zestuan
Alkar aditu gabe
Giñaden kasuan;
Artan juango nintzala
Nonbait uste zuban
Pantasiyarik asko
Beiñepin bazuban.

— 11 —

Jose de Aritzeta
Zan nere zerbitzen
Badaki iñorgatik
Ankak erabilltzen;
Ala ere lengo teman
Zan Patxi gelditzen
Baña arrazoyak
Asko du errenditzen.

— 12 —

Pentzaturik gauza ori
Konponduko zala
Etxera juan nitzayon
Gizona bezela;
Errespuesta ekarri
Ziran beriala
Len agindubak ere
Damu zituala.

— 13 —

José de Pagadizabal
Bidaramonian
Abiso juan zitzayon
Graziya onian;
Jakin biar zubela
Konpondubenian
Bestela asitzeko
Nundipait lanian.

— 14 —

Ikara garriya zan
Jaun orren itzala
Pentzaturikan nonbait
Billdurtzen nintzala;
Beste konponziyotan
Kontentu etzala
Artutako lekuan
Entrega nintzala.

— 15 —

Errespuesta ori
Gustatu zait agitz
Anbat egingonuke
Ala bear balitz;
Bai ta entregatu ere
Dioskat egun argiz
Damatxo biren gisan
Kartoletan zaldiz.

— 16 —

Ea Patxi Elosu
Zaitez enteratu
Orra pasadizua
Zuzen declaratu;
Ez ditut zure gauzak
Gaizki enpleatu
Oñez eraman eta
Zaldiz entregatu.

— 17 —

Neri emandirate
Zeregiña sobre
Probetxu gabeko lanak
Nekia du doble;
Orra nun daduzkatzun
Nai badituzu gorde
Gari zuman jateko
Bakallao orde.

— 18 —

Ez naiz ustez ibilli
Iñoren ofensan
Pasa ez dan gausarik
Ez dezaket esan;
Ongi ez badeizkiyosu
Gari zuman ez jan
Gero baliyatzeko
Para eskabetxan.

— 19 —

Ez nizuke emanai
Konseju txarrikan
Ez eta egiñ ere
Gauza okerrikan;
Beztetara ez badezu
Modu oberikan
Kuarto bi billdutzeko
Para itzatzu errifan.

— 20 —

Ez badezu modu onik
Alde oyetara
Gizonak jarri beardu
Edozeñetara;
Ez due geyago baliyo
Oyek beztetara
Beliak dibertitzeko
Bota errekara.

— 21 —

Agur Patxi Elosu
Egon animoso
Orra pasadizuba
Zuzen adieraso;
Bakoitzak beren kargak
Biarditugu jaso
Ganadu ona emanziñidan
Da eskerrikan asko.

Garro - Guetaria